**Okerrak zuzendu:**

1. Nik zuk adina diru daukat.
2. Pello zu bezain altua da.
3. Aulkiak besalukiak adina egur dauka.
4. Leihoak ateak bezainbeste/adina/beste kristal dauzka.
5. Telebistak irratiak adina argi kontsumitzen du.
6. Bizarduna biboteduna bezain lodia da.
7. Ez daukat nik zuk adinako presarik.
8. Mendiko gizonak itsasokoak bezain ederrak dira.
9. (ondo)
10. Egongelan sukaldean bezainbeste/adina/beste aulki dago.
11. Lorategi honetan nire balkoian adina lore dago.

**Itzulpenak:**

1. Aspaldi ez dut atzokoa bezalako/adinako egunsentirik ikusi.
2. Ez da dirudien bezain ona.
3. Zenbat eta gehiago hurbildu, orduan/hainbat eta politagoa iruditzen zait.
4. Berandu etorri dira, baina espero genuen baino goizago / baina ez espero genuen bezain berandu.
5. Hemengo jendea ez da Gasteizkoa bezalakoa.
6. Zenbat eta jende gehiago etorri, orduan/hainbat eta hobeto; horrela, oharkabean pasatu ahal izango gara.
7. Zu bezain gaizki nago, baina zu baino gutxiago kexatzen naiz.
8. Kororena baino gorriagoa dela iruditzen zait.
9. Mirenek gozkiak adina pastel erosi ditu Jonek, baina bidean jan ditu.
10. Orain ez gabiltza hasieran bezain ondo.
11. Eskuinak ez du prentsak dioen adina boto lortuko.
12. Zenbat eta ariketa gehiago egin, orduan/hainbat eta galduago gabiltza.

**Itzulpenak:**

1. Nire autoa ez da Juantxok iaz erosi zuena bezalakoa.
2. Ezagutu genuenean bezain gaizki bizi da.
3. Ez du esaten duen adina irabazten.
4. Euskaraz hitz egitea ez da hain zaila.
5. Erabat asaldatu zen, baina nik uste dut ez dela hainbesterako.
6. Aurreakoan baino gutxiago edango ahal duzu oraingoan!
7. Edurnek arrainek bezala egiten du igeri.
8. Madrilen jan genituenak bezalako pastelak erosi ditut.
9. Ez dakit zertarako esaten duzuen hainbeste txorakeria, inork ez dizue kasurik egiten eta.
10. Durangoko baserriak Baztangoak bezain emankorrak dira.
11. Zu bezala nabil.
12. Hau ez da dirudien bezain zaila.
13. Gaur ez dugu atzo adinako lanik egin.
14. Nahi duzuna esango duzu, baina ez da hain dotorea.
15. Ez nazi zu bezalakoa. Naizen bezalakoa naiz.

**Berridazketak (adinako):**

1. Nire ustez, Saralegi Perurena bezain indartsua da.
2. Animo, mutiko! Laster izango zara Indurain bezain indartsua/azkarra/ona...
3. Jende burugogora ezagutu dut; baina zu bezain burugogorrik, ez asko.
4. Oso harro zabiltza zure kotxearekin, baina nirea ere bada zurea bezain ona/polita...
5. Arkonada goraipatzen duzu? Nik ez dut ezagutu Iribar bezain onik.
6. Euskal Herriak bere historian ez du eman Txirrita bezain onik.
7. Itsasaldea ez da mendia bezain ederra.
8. Berogailu hau ez da nire etxekoa bezain beroa/indartsua.
9. Nik ez dut zuk adina erraztasunik hizkuntzak ikasteko.
10. Ez nuen uste guri bezain zail jarriko zienik.
11. Zuk ez duzu inoiz nik adinako minik jasan.
12. Txapelak adinako onttoak bildu genituen.
13. Ez da zu bestekoa, baina saiatzen ari da eta lortuko du.
14. Nireak bezain onak/txarrak... balitu beste kontu bat izango litzateke.
15. Zuk adinako dirutza gastatu du horrek sendagaietan.
16. Liburutegi hau ez da K.M. Adinakoa, baina bai aberatsagoa.
17. Ausarta bezain lotsagabea zen.

**Itzulpenak:**

1. Euskadin gero eta jende gutxiago bizi da.
2. Zenbat eta gehiagotan entzun utzi dizudan diskoa, orduan/hainbat eta gustukoago dut.
3. Abestu ezazu beranduxeago; bestela, ez zaizu ezer entzungo.
4. Laguna ikusi zuenean izugarri poztu zen, baina areago albistea eman zionean.
5. Besteetan baino askoz ere hobeto egin dut.
6. Gero eta zailagoa da zurekin hitz egitea.
7. Hitz egin ezazu baxuxeago! Gorra naizela uste al duzu, ala?
8. Zenbat eta gehiagotan irakurri, orduan/hainbat eta gustukoago dut.
9. Gero eta egonarri gutxiago daukazue seme-alabekin. Ez dakit zertarako izan zenituzten.
10. Gutxiago jango bazenu, hobeto egongo zinateke.
11. Jacinto alferra da, baina Inaxio are alferragoa.
12. Pelikula hau aurrekoa baino askoz ere hobea da.
13. Xabierrek ez du hainbeste jaten.
14. Lehenxeago etorri izan bazina...
15. Beranduxeago esango dizut.
16. Zenbat eta denbora gehiago igaro zurekin, orduan/hainbat eta gustukoago zaitut.